**Sarrera**

605 presok osatzen dute egun Euskal Preso Politikoen Kolektiboa. 605 preso horiek 85 espetxetan sakabanatuta daude. Preso guzti hauetatik 7 soilik daude Euskal Herriko espetxetan, eta hauek ere 3 espetxetan sakabanatuta daude. Preso kopururik handiena Espainiako espetxeetan aurkitzen da, 443 preso politiko daude 45 espetxetan sakabanatuta. Frantziako espetxeetan 136 preso aurkitzen dira 32 espetxetan sakabanatuta. Preso bana daude Portugalen, Ipar Irlandan eta Eskozian, eta 3 Ingalaterran. Honez gain, 11 preso daude etxean eta preso bat Erroman dago etxean atxilotuta. Preso 1 konfinatua dago Frantzian, Autunen zehazki.

Hilabete honetan bereziki kezkatuta utzi gaitu Enara Rodrigez, Arkaitz Rodrigeze presoaren arrebak, jasan duen erasoak. Gertaera irailaren 28an gertatu zen, Enara bere anaia bisitatzetik bueltan zetorrela. Bidean auto batek zuen jarrera arraroaz ohartu zen, baina, une batean auto hori bera errepidetik ateratzen saiatu zen. Eta autoak hiru-lau buelta eman bazituen ere ez zen irauli. Hala ere, berarengana polizia plaka bat zuten bi gizon gerturatu ziren, eta Enara erasotu zuten. Mehatxuak, irainak, ukipenak, etab. jasan behar izan zituen. Jarrera hau onartezina da. Senideok jasan behar izaten dugun jazarpenaren muturreko adibide bat da. Eta senide eta lagunok uste dugu, dispertsioak horrelako gertaerak eta erasoak jasateko erraztasun osoa ematen duela. Beraz, gure aurkako erasoekin berehala amaitzea eskatzen dugu, eta hau ahalbidetzen duen sakabanaketaren berehalako desagerpena eskatzen dugu.

Askotan salatu dugu espetxe politika hau gure senideez gain, guk geuk ere jasan behar izaten dugula, eta Enararen kasuak hori argi eta garbi erakusten du. Baina, era berean, ezin dugu ahaztu gure senideek bizi duten egoeraz ere. Etengabe kezkatzen gaituen kontua baita. Esate baterako, gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten hamahiru presoetako bat, Aitzol Gogorza, bost egunez ospitalean egon da hilabete honetan zehar. Bestalde, urriaren 4an Espainiako gobernuak Estrasburgon helegitea jarri zuen, honek 197/2006 doktrinaren inguruan Ines del Rioren kasuan hartutako ebazpenagatik. Eta, Estrasburgok helegitea tramitera onartu zuela jakin genuen urriaren 23an.

Guzti honez gain, bi iheslari politikoren heriotzaren berri ere izan dugu. Batetik Celestino Galan bilbotarra hil zen, Venezuelan, 53 urte zituela, istripu batez. Eta bestetik, Francisco Javier Blanco hil zen, Kanbon, gaitz larri baten ondorioz.

Beraz, argi ikus daiteke gure senide eta lagunen aurkako salbuespeneko espetxe politika honek ez duela etenik, eta honek beraiengan ondorio zuzenak dituela. Baina, guri ezartzen zaigun mendeku politika hau ere bete-betean aplikatzen jarraitzen dute, eta horrek gugan ere baditu ondorioak. Enara Rodrigezen testigantza irakurri besterik ez dago (hilabetekarian irakur daiteke), hau ulertzeko.



# 1. ESPETXEA ETA OSASUNA

Gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten presoen inguruko kezkak ez du etenik. Ezinbestekotzat jotzen dugu hamahiru gaixo larrien berehalako etxeratzea, izan ere, preso hauen kasuan denborak izugarrizko garrantzia du; eta espetxean zenbat eta denbora gehiago igaro, beraien osasun egoerak nabarmen egiten du okerrera. Hau bereziki gaixotasun psikologikoak dituzten presoengan nabaritzen da.

Hain zuzen ere, gaixotasun psikologikoa duen gaixo larrietako bat ospitaleratu dute hil honetan. Aitzol Gogorza urriaren 18an Basurtuko Ospitalera eraman zuten. Aitzolek gora-behera handiak izaten ditu, eta azken aldian animoz nahiko baxu aurkitzen zen. Egoerari buelta ematen ez ziola ikusita, espetxeko medikuek, Aitzolen konfiantzazko medikuek, eta Aitzolek berak ikusi zuten hoberena bera ospitaleratzea izango zela. Bost egunez ospitaleratua egon ondoren, berriro ere espetxera eraman zuten. Medikazioa egokitu zioten ospitalean egon zen bitartean, eta lasaiago aurkitzen zen. Beraz, egun berriro ere bere ziegan aurkitzen da.

Gogorzak urte luzeetako obsesio konbultsio nahasmena du. 1999an atxilotua izan ondoren, gaixotasuna berpiztu zitzaion eta asistentzia psikiatriko espezializatua behar izan zuen Poissyko espetxean (Estatu frantsesa). 2011ko ekainean Madrileko Soto del Real espetxera eraman zuten: tentsio uneak bizi izan zituen bertako funtzionarioekin eta bakartze erregimenean ezarri zuten. Urte bereko urrian, gaixotasuna larriagotu egin zen, obsesio konbultsio aldi larriekin, eta azaroan suizidioa arriskuarentzako ezartzen den 24 orduko laguntza protokoloa ezarri zioten.

Osasun asistentzia egoki bat jasotzeko eta euren gaixotasunak okerrera ez egiteko, bai Aitzol Gogorza eta bai gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten beste hamabi presoen berehalako askatasuna beharrezkoa da.

Honez gain, Iosu Uribetxebarria etxera itzuli zen urriaren 23an. Ospitaletik atera eta Arrasatera itzuli zen. Hala ere, ezin dugu ahaztu Iosuk aspaldi behar zuela etxean, eta hau ez da gauzatu egoera azken muturreraino iritsi den arte. Egun, medikuek Iosuri alta ematea erabaki dute, etxean berrindartu dadin. Baina, etxean ere tratamenduarekin jarraitu beharko du.

## Gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten hamahiru preso politikoak

**Jesus Mª MARTIN HERNANDO (Basauri)** - ESPETXEA: Zaballa. 1960. urtean jaioa. 2002an atxilotua. Nahasmen eskizo-afektiboa delirio osagarriarekin.

**Iñaki ERRO ZAZU (Iruñea)** - ESPETXEA: Almeria. 1960an jaioa. 1987an atxilotua. SCASEST erako Kardiopatia iskemiko larria. Bihotz kateterismoa: 3 stent ezarria ditu.

**Josetxo ARIZKUREN RUIZ (Iruñea)** - ESPETXEA: A Lama (A Coruña). 1958an jaioa. 1999an atxilotua. Kardiopatia iskemiko larria. Kateterismoa: Stent hodi batean.

**Isidro GARALDE BEDIALAUNETA (Ondarroa)** - ESPETXEA: Puerto I (Cádiz). 1951ean jaioa. 1985ean atxilotua. Kardiopatia iskemikoa- (SCASEST erakoa) Prostatako hiperplasia benignoa, Kataratak.

**Jose Ramon LOPEZ DE ABETXUKO LIKINIANO (Gasteiz)** - ESPETXEA: Villabona (Asturias). 1949an jaioa. 1989an atxilotua. Bradikardia sintomatikoa. Fibrilazio aurikularra, Prostatako adenoma.

**Gotzone LOPEZ DE LUZURIAGA FERNANDEZ (Agurain)** - ESPETXEA: Martutene. 1959an jaioa. 1989an atxilotua. Bularreko minbizia.

**Jose Angel BIGURI CAMINO (Menagarai)** - ESPETXEA: Martutene. 1955ean jaioa. 1989an atxilotua. Prostatako adenokartzinoma (minbizia).

**Inmaculada BERRIOZABAL BERNAS (Zegama/Elorrio)** - ESPETXEA: A Lama (Pontevedra). 1951ean jaioa. 2009an atxilotua. Psoriasi artropatia, Diabetesa (DM-II), Diabetes oina, hipertentsioa, azkazaletako psoriasia, Asma bronkiala, belaunetako protesia.

**Gari ARRUARTE SANTA CRUZ (Hernani)** - ESPETXEA: Almeria. 1980an jaioa. 2003an atxilotua. Espondilitisa.

**Iñaki ETXEBERRIA MARTIN (Iruñea)** - ESPETXEA: Topas (Salamanca). 1964ean jaioa. 1996an atxilotua. Eboluzio luzeko Miopia Magnoa. Eskuineko begiko erretina hemorragia, Ikusmen zorroztasunaren galera, ezkerreko begiko afaquia.

**Jesus Mª MENDINUETA FLORES (Arbizu)** - ESPETXEA: Zuera (Zaragoza). 1968an jaioa. 1991ean atxilotua. Gaixotasun erreumatikoa, afektazio sistemikoarekin. Hori dela eta, aurrealdeko uveitisa . Bi disko-eten (lepoaldean eta gerrialdean, lepoko mina eta ziatikarekin) . Sinupatia aldi errepikariak.

**Aitzol GOGORZA OTAEGI (Orereta)** - ESPETXEA: Basauri. 1975ean jaioa. 1999an atxilotua. Nahaste obsesibo konpultsiboa.

**Jose Miguel ETXEANDIA MEABE (Larrabetzu)** - ESPETXEA: Topas (Salamanca). 1960an jaioa. 2003an atxilotua. Nahaste obsesibo konpultsiboa, Hepatitis C.



# BIZI OSORAKO ESPETXE ZIGORRA

Espainiar estatuak eta frantziar estatuak bizi osorako espetxe zigorra aplikatzen diete gure senide eta lagun euskal preso politikoei. Frantzian, bizi osorako espetxe zigorra legala da. Bizi osorako espetxe zigorrera kondenatuek, epaileek zehaztutako denbora espetxeraturik igaro ostean kaleratzeko aukera dute. Hala ere, euskal preso politikoen kasuan kaleratzeko eskaerak ukatuak izaten dira. Honela, egun badira Frantzian 22 urte espetxean igaro dituzten euskal preso politikoak. Zehazki hiru dira 1990eko apirilean atxilotu zituztenetik espetxean jarraitzen duten euskal presoak:

**Jakes Esnal**
**Frederik Haranburu**
**Jon Parot**

Espainiar estatuak bizi osorako espetxe zigorra ahalbidetzen duen 197/2006 doktrina aplikatzen diete gure senide eta lagunei. 2006. urtean Auzitegi Gorenak kaleratu zuen doktrina hau. Erredentzioak espetxealdi limitetik kalkulatu beharrean (30 urte), zigor bakoitzetik kalkulatutakoak izatea dakar 197/2006 doktrinaren aplikazioak. Honela, erredentzioak murriztu beharreko denbora kasu askotan indargabetua geratu delarik.

Guzti hau kontuan hartuta 197/2006 doktrina aplikatu zaien euskal preso politikoek Auzitegi Konstituzionalean helegiteak jarri zituzten. Sei urte luzeren ondoren, 2012ko martxoaren 29an Auzitegi Konstituzionalak 197/2006 doktrinaren aurka jarritako helegiteen inguruan hartutako erabakiaren berri eman zuen. Aztertzen ari ziren 25 helegiteetatik 19 bota zituzten atzera orduan. 4 onartu zituen, eta 3 ez ziren tramitera onartuak izan. Gerora euskal preso gehiagori aplikatu diete 197/2006 doktrina.

2012ko uztailean Estrasburgoko Giza Eskubideen Auzitegia 197/2006 doktrinaren aurka agertu zen; zehazki, Ines del Rio presoaren defentsak jarritako helegitearen inguruko ebazpena izan zen. Ebazpen hau Ines del Rioren kasura mugatzen bazen ere, 197/2006 doktrinaren inguruko irakurketa bat egiten zuen, eta guk, senide eta lagunok, hainbestetan salatu dugun bizi osorako espetxe zigorraren aurka egiten zuen bertan. Estrasburgoko Giza Eskubideen Auzitegiak azaldu zuen 197/2006 doktrina aplikatuz presoen eskubideak urratzen ari direla, eta horregatik berehala desagertua izan behar duela.

2012ko irailaren 24an, ELDH-ek, Demokrazia eta Giza Eskubideen Aldeko Europar Legelarien Elkarteak 197/2006 doktrinak zein gaixo larri dauden euskal presoak kartzelan edukitzeak Espainiako eta nazioarteko legediak bortxatzen dituztela ohartarazi zuen. Honela, Espainiako Gobernuari eta bere erakundeei 197/2006 doktrina aplikatuta duten eta gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten presoak askatzeko dei egin dio. Bestalde, Europako Giza Eskubideen Auzitegiak Ines del Rio presoaren auziaz emandako ebazpenarekin bat egiten dutela ere adierazi zuten.

Urriaren 4an, Espainiako gobernuak helegitea jarri zuen, Estrasburgoko Giza Eskubideen Auzitegiak Ines del Rioren kasuan emandako ebazpenaren aurka. Urriaren 23an, Estrasburgok helegitea tramitera onartu zuen. Behin onartuta, ez dago eperik ezarrita erantzuna emateko. Urriaren 15ean, berriz, Estrasburgon 20 kasu gehiago sartu ziren.

## 197/2006 doktrina aplikatuta duten eta espetxean dauden presoen zerrenda

| Izen-abizenak | Espetxea | Espetxean zenbat urte? | Irteera data | Irteera data 197/2006 doktrina aplikatu ondoren |
|---|---|---|---|---|
| JON AGINAGALDE URRESTARAZU | Granada | 28 | 2010/07/04 | 2014 |
| IÑIGO AKAITURRI IRAZABAL | A Lama | 21 | 2010/04/15 | 2021 |
| JUAN CARLOS ARRUTI AIZPITARTE | Cordoba | 23 | 2009/03/05 | 2019 |
| JOSEBA ARTOLA IBARRETXE | Daroca | 26 | 2006/05/18 | 2016 |
| LUIS MARI AZKARGORTA BELATEGI | Zuera | 24 | 2007/10/08 | 2018 |
| SANTOS BERGANZA ZENDEGI | Amurrio | 23 | 2011/06/15 | 2019 |
| JOSE ANGEL BIGURI CAMINO | Martutene | 23 | 2010/06/09 | 2019 |
| JESUS BOLLADA ALVAREZ | Albocasser | 25 | 2006/05/20 | 2017 |
| FERNANDO DEL OLMO VEGA | Almeria | 21 | 2012/02/01 | 2020 |
| INES DEL RIO PRADA | Curtis | 25 | 2008/07/05 | 2017 |
| JUAN IGNACIO DELGADO GOÑI | Topas | 21 | 2012/02/19 | 2021 |
| JOSU DIAZ DE HEREDIA RUIZ DE ARBULU | Topas | 26 | 2009/10/15 | 2016 |
| IÑAKI ERRO ZAZU | Almeria | 25 | 2010/05/16 | 2017 |
| JOSE ETXEBERRIA PASCUAL | Daroca | 21 | 2010/03/26 | 2021 |
| ELIAS FERNANDEZ CASTAÑARES | Villabona | 26 | 2011/05/27 | 2016 |
| IÑAKI FERNANDEZ DE LARRINOA | Puerto I | 23 | 2008/10/01 | 2019 |

| | | | | |
|---|---|---|---|---|
| NICOLAS FRANCISCO RODRIGUEZ | Herrera de la Mancha | 25 | 2009/05/29 | 2017 |
| JUAN MARI GABIRONDO AGOTE | A Lama | 26 | 2007/12/01 | 2016 |
| ISIDRO GARALDE BEDIALAUNETA | Puerto I | 27 | 2010/02/02 | 2020 |
| XABIER GOLDARAZ ALDAIA | Zuera | 20 | 2011/09/17 | 2022 |
| PATXI GOMEZ LOPEZ | Basauri | 21 | 2006/06/14 | 2018 |
| RAUL IBAÑEZ DIEZ | Dueñas | 21 | 2010/10/08 | 2021 |
| JUAN JOSE LEGORBURU GEREDIAGA | Albocasser | 26 | 2009/04/02 | 2016 |
| GOTZONE LOPEZ DE LUZURIAGA FERNANDEZ | Martutene | 23 | 2010/08/11 | 2019 |
| ANTXON LOPEZ RUIZ | Puerto I | 25 | 2006/07/24 | 2017 |
| FRANCISCO LUJANBIO GALDEANO | Herrera de la Mancha | 28 | 2008/02/17 | 2014 |
| JOSE RAMON MARTINEZ DE LA FUENTE INTXAURREGI | Logroño | 27 | 2009/01/01 | 2020 |
| JABI MARTINEZ IZAGIRRE | Jaen | 20 | 2010/09/22 | 2022 |
| JESUS MARI MENDINUETA FLORES | Zuera | 21 | 2011/05/04 | 2021 |
| INMACULADA NOBLE GOIKOETXEA | Algeciras | 25 | 2008/11/08 | 2017 |
| PEIO ODRIOZOLA AGIRRE | Zuera | 24 | 2008/07/02 | 2018 |
| IÑAKI OROTEGI OTXANDORENA | Zuera | 26 | 2008/12/17 | 2016 |
| IMMA PACHO MARTIN | Málaga | 21 | 2008/03/11 | 2021 |
| JUAN MANUEL PIRIZ LOPEZ | Algeciras | 28 | 2009/03/01 | 2014 |
| IÑAKI PUJANA ALBERDI | Villena | 25 | 2009/02/23 | 2021 |
| KEPA REZABAL ZURUTUZA | Monterroso | 25 | 2006/12/30 | 2016 |

| | | | | |
|---|---|---|---|---|
| MAITANE SAGASTUME ARRIETA | **Curtis** | 21 | 2009/07/26 | 2021 |
| JOKIN SANCHO BIURRUN | **Zuera** | 23 | 2009/12/08 | 2019 |
| KEPA SOLANA ARRONDO | **Bonxe** | 21 | 2009/10/10 | 2021 |
| TXOMIN TROITIÑO ARRANZ | **Curtis** | 25 | 2006/05/05 | 2017 |
| ANTTON TROITIÑO ARRANZ | **Belmarsh** | 25 | 2011/02/04 | 2017 |
| MITXEL TURRIENTES RAMIREZ | **Herrera de la Mancha** | 26 | 2009/04/10 | 2016 |
| JOKIN URAIN LARRAÑAGA | **Herrera de la Mancha** | 26 | 2009/08/29 | 2016 |
| IÑAKI URDIAIN ZIRIZA | **Valencia III** | 23 | 2009/10/09 | 2019 |
| JON ANDER URKIZU ORMAZABAL | **Teruel** | 26 | 2007/07/22 | 2016 |
| MARITXU UZKUDUN ETXENAGUSIA | **Granada** | 21 | 2009/08/27 | 2021 |
| JOSE FELIX ZABARTE JAINAGA | **Puerto III** | 27 | 2008/04/11 | 2015 |
| GONZALO RODRIGUEZ CORDERO | **Herrera de la Mancha** | 19 | 2013/07/11 | 2023 |
| IÑAKI ZUGADI GARCIA | **Murcia II** | 20 | 2012/04/30 | 2022 |
| JUAN JOSE ZUBIETA ZUBELDIA | **Monterroso** | 21 | 2012/04/30 | 2021 |
| JOSUNE ONAINDIA SUSAETA | **Murcia II** | 20 | 2012/06/09 | 2022 |
| JOSU AMANTES ARNAIZ | **Bonxe** | 20 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| IÑAKI ARAKAMA MENDIA | **Sevilla II** | 15 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| SANTIAGO ARROZPIDE SARASOLA | **Zuera** | 25 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| JOSE MARIA BERISTAIN URBIETA | **Puerto III** | 23 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| OSKAR CADENAS LORENTE | **Murcia II** | 16 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| JORGE GONZALEZ ENDEMAÑO | **Mansilla** | 17 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| MANU GONZALEZ RODRIGUEZ | **Sevilla II** | 23 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |

| | | | | |
|---|---|---|---|---|
| **UNAI PAROT NAVARRO** | **Puerto III** | 22 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| **LURDES TXURRUKA MADINABEITIA** | **Huelva** | 18 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| **JOSE JAVIER ZABALETA ELOSEGI** | **Zuera** | 22 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| **ASIER ORMAZABAL LIZEAGA** | **Teruel** | 15 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| **GERMAN RUBENACH ROIZ** | **Puerto III** | 22 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| **ALBERTO PLAZAOLA ANDOAGA** | **Curtis** | 22 | 2016/11/26 | 2026 |
| **GABRIEL ZABALA ERASUN** | **Villabona** | 19 | 2013/09/27 | 2023 |

Zerrenda honetan agertzen diren 65 euskal preso politiko hauez gain, beste 20 presori ere aplikatu zaie 197/2006 doktrina. Azken 20 hauek, ordea, arrazoi ezberdinengatik, doktrinaren zigorra guztiz beteta ala bete gabe kalean aurkitzen dira egun. Beraz, kontutan hartzekoa da gure 85 senideri aplikatu dietela bizi osorako espetxe zigorra ahalbidetzen duen 197/2006 doktrina.



# ZIGORRAREN 2/3 ETA 3/4 BETETA DITUZTEN PRESOAK

Egun 146 euskal preso politikok zigorraren 2/3ak edo 3/4ak beteta izateagatik baldintzapeko askatasunari esker kalean beharko lukete, eta hala ere espetxeraturik mantentzen dituzte. Beste behin Euskal Preso Politikoei salbuespeneko neurriak ezartzen zaizkiela ikus daiteke. 146 pertsonek urteak daramatzate espetxean eta zigorraren 2/3 eta 3/4ak beteta baldintzapeko askatasunean beharko lukete, baina espetxean jarraitzen dute. Hona hemen aske beharko luketen presoen zerrenda:

**ESPAINIAR ESTATUA**

1. ABAD SAN PEDRO ENDIKA
2. AGIRRE LETE JUAN LUIS
3. ALMARAZ LARRAÑAGA AGUSTIN
4. ALONSO ALVAREZ RAUL
5. ALONSO CURIECES ANUNTZI
6. ALONSO RUBIO IÑAKI
7. APARICIO BENITO JON KOLDO
8. APEZTEGIA JAKA JOXE KARLOS
9. ARANBURU MUGURUZA XABIER
10. ARISTI ETXAIDE PATXI
11. ARKAUZ ARANA JOSU
12. ARREGI ERROSTARBE JOSEBA
13. ARRIAGA ARRUABARRENA RUFINO
14. ARRIETA ISMAEL
15. ASENSIO MILLAN PAUL
16. ASKASIBAR GARITANO MIKEL
17. BALANZATEGI AGIRRE XABIER
18. BALERDI IBARGUREN XABIER
19. BALERDI ITURRALDE JUAN CARLOS
20. BEASKOA RODRIGEZ JON
21. BEAUMONT BARBERENA JOSU
22. BELLON BLANCO ARKAITZ
23. BELOKI RESA ELENA
24. BENAITO VILLAGARCIA MIGUEL ANGEL
25. BERISTAIN URIZARBARRENA, IKER

26. BETOLAZA VILAGRASA GORKA
27. BILBAO BEASKOETXEA IÑAKI
28. CABELLO PEREZ ANDONI
29. CAÑAS CARTON IÑAKI
30. CASTRO SARRIEGI ALFONSO
31. DORRONSORO MALAXETXEBARRIA JOSE MARIA
32. EGIGUREN ENBEITIA OLATZ
33. ERNAGA ESNOZ JOSEPA
34. ERRAZTI ELORZA JOKIN
35. ESNAL JUANTXU
36. ESTONBA ITURRIZA ARATZ
37. ETXEANDIA MEABE JOSE MIGUEL
38. ETXEBARRIA MARTIN IÑAKI
39. FAGOAGA IGANTZI IÑAKI
40. FERNANDEZ BERNALES JULEN
41. GABIOLA GOIOGANA ANDONI
42. GALARZA QUIRCE LUIS ANGEL
43. GAÑAN RAMIRO GAIZKA
44. GARAIZAR SAN MARTIN NEREA
45. GARCIA MIJANGOS JOSE
46. GARCIA RAZKIN SERGIO
47. GARCIA SERTUTXA GORKA
48. GOIENETXE ALONSO IÑAKI
49. GOMEZ LARRAÑAGA ARATZ
50. GONZALEZ RODRIGUEZ MANUEL
51. GONZALO CASAL IÑAKI
52. GRAMONT DABID
53. GUEMES OIARBIDE ITXASO
54. GUNDIN MAGUREGI PATXI
55. HIDALGO LERTXUNDI AIMAR
56. IPARRAGIRRE ARRETXEA IMANOL
57. IRASTORZA OTEGI AINHOA
58. JUARISTI ARRIETA XABIN
59. CORTA CARRION MIKEL
60. LARRINAGA MARTIN JULEN
61. LARRINAGA RODRIGUEZ ASIER
62. LASA MITXELENA JUAN LORENZO
63. LEGAZ IRURETA ARMANDO
64. LESENDE ALDEKOA TXOMIN
65. LOIZAGA LOINAZ IÑAKI
66. LOPEZ DE ABETXUKO LIKINIANO JOSE RAMON
67. MAJARENAS IBARRETA SARA
68. MARKEZ DEL FRESNO KEPA
69. MUJIKA GARMENDIA FRANCISKO
70. OIARTZABAL UBIERNA ANARTZ
71. OLAIZ RODRIGUEZ JORJE

72. OLANO OLANO JUAN MARIA
73. ORMAZABAL GAZTAÑAGA JON MARKEL
74. OTAZUA URRESTI IÑIGO
75. PEREZ DE ANUNCITA URKIJO EDUARDO PABLO
76. PRIETO JURADO SEBASTIAN
77. ROJO GONZALEZ JUAN RAMON
78. RUIZ JASO ZIGOR
79. SADABA MERINO FRANCISCO JAVIER
80. SAEZ ARRIETA ARKAITZ
81. SALEGI GARCIA OROITZ
82. SAN EPIFANIO SAN PEDRO FELIPE
83. SOLA TORRES JOSE DOMINGO
84. TAPIA ZULAIKA ASIER
85. TERRONES ARRETE JAGOBA
86. TOBALINA RODRIGUEZ JUAN
87. TODA IGLESIA TERESA
88. TXIMENO INZA XABIER
89. UGALDE ZUBIRI ANDONI
90. UGARTE VILLAR XABIER
91. URIBE NAVARRO RAMON
92. URIZAR DE PAZ GERMAN
93. URIZAR MURGOITIO JOSE GABRIEL
94. URRA GURIDI KEPA
95. VIRUMBRALES AMENABAR ASIER
96. ZABARTE ARREGI JESUS MARI
97. ZARRABE ELKOROIBIDE MIKEL
98. ZELARAIN ERRAZTI JULEN
99. ZELARAIN OIARTZABAL PEIO
100. ZIGANDA SARRATEA JOSU
101. ZUBIA URRUTIA IKER
102. ZUBIZARRETA BALBOA KEPA
103. ZULAIKA AMUTXASTEGI GORKA
104. ARREGI IMAZ XABIER
105. ASKASIBAR BARRUTIA BIXENTE
106. BEROIZ ZUBIZARRETA ANDONI
107. BRAVO MAESTROJUAN JOSU
108. COLOMA UGARTEMENDIA ASIER
109. ESKISABEL BARANDIARAN ANITZ
110. ESPARZA ORTEGA JOSEBA
111. HERNAEZ BOLINAGA AILANDE
112. GANDIAGA IBARZABAL ESTEBE
113. GAZTELU OTXANDORENA JOSE MIGUEL
114. GONZALEZ PAVON JOSEBA
115. IBARRA IZURIETA BIGARREN
116. LEJARZEGI OLABARRIETA ENDIKA
117. LIZARRALDE PALACIOS ANA
118. OLARRA AGIRIANO JOXE MARI
119. OSTOLAZA IKARAN ENEKO

120. PASCUAL MUNETA GARIKOITZ
121. SAENZ OLARRA BALBINO
122. SALUTREGI MENTXAKA JABIER
123. TRENOR DICENTA KARLOS
124. VARGAS OLASOLO MIKEL
125. ZUBIMENDI IZAZA ARAITZ
126. ZENARRUZABEITIA IRUGUENPAGATE ZALOA
127. ZUBIAGA LAZKANO XEBER

**FRANTZIAR ESTATUA**

1. FREDERIK HARANBURU
2. INIGO ELIZEGI
3. JACKES ESNAL
4. JUAN CARLOS ESTEVEZ PAZ
5. AITOR KORTAZAR
6. MAITE JUARROS
7. JON KIRRU OTXOANTESANA
8. JON PAROT
9. IÑAKI REGO
10. RAMUNTXO SAGARZAZU.
11. BEÑAT SANSEBASTIAN.
12. PEIO ALCANTARILLA
13. MARINA BERNADO BONADA
14. MIKEL ALMANDOZ
15. MATTIN OLZOMENDI.
16. GALDER CORNAGO
17. ITXASO LEGORBURU
18. IBAI SUESKUN
19. JEAN MARIE SAINT PEE

4. 

# IHESLARIAK

Alde batetik, Celestino Galan iheslari politiko bilbotarra irailaren 22an hil zen Venezuelan, 53 urte zituela. Istripuz hil zen, auto batek harrapatuta. Celestino Venezuelako Carabobo estatuko Valentzia hirian bizi zen, eta bertan seme bat ere bazuen, 5 urtetakoa. Guztira 30 urte baino gehiago zeramatzan Celestinok etxetik kanpo.

Bestetik, Fernando Javier Blanco iheslari politikoa hil zen urriaren 17an Kanbon, gaitz larri baten ondorioz. 70. urteetan ihes egin zuen Iparraldera, eta Venezuelan ere bizi izan zen. Urriaren 23an omenaldia egin zioten iheslarien kolektiboak Biarritzen, gorpua erraustu aurretik.

Une honetan Etxerat elkarteak bere babesa eta elkartasuna adierazi nahi die Celestino Galan eta Fernando Javier Blancoren senide eta lagunei. Eta era berean, horrelako egoerak errepika ez daitezen euskal errepresaliatu politikoek Euskal Herrian bizitzeko duten eskubidea aldarrikatzen dugu.

Azken urteetan jasandako jazarpen politikoaren ondorioz eta torturak jasateko beldurraren ondorioz, gure senide eta lagun askok ihes egin behar izan dute euren etxeetatik; ez dakigu non bizi diren ez eta zein bizi baldintzetan bizi diren. Egoera hau bereziki zaila da euren senitartekoak non eta nola dauden ez dakitenentzat.

Zenbait iheslari Euskal Herritik milaka kilometrotara bizi dira: Venezuelan, Panaman, Kuban, Mexicon, Belgikan, Cabo Verden eta beste hainbat herrialdetan. Sarri egoera benetan latzak bizi dituztelarik. Gainera, momentu oro atxilotuak, torturatuak eta espetxeratuak izateko beldurrarekin bizi dira.

Errefuxiatu politikoen senide eta lagunek oso egoerak zailak bizi behar izaten dituzte. Erabateko ezjakintasunarekin bizi dira egunero. Eurekin komunikatu ahal duten kasuetan, hainbat oztopo gainditu behar izaten dituzte horretarako. Horrez gain, beraiek bisitatu ahal izateko gastu ekonomiko handi bati aurre egin behar izaten die. Eta oztopo hau gainditzea lortzen dutenetan ere, estatuen errepresioarekin aurkitzen dira. Egoera guztiz zailtzen dutelarik.



# 5. GERTAERA LARRIAK

## Isolamendua eta bakartzea

Bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotza euskal preso politikoen bereizgarri bat da. Isolamendua edo bakartzea egoera oso zehatzetara zuzendutako neurria bada ere, espetxe arautegian (zigor puntual gisako neurritzat hartzen dena), gure senide eta lagunen kasuan ohiko edota behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Esan bezala, euskal presoen kasuan isolamendua edo mitarda maiz ezartzen den zigor bat da. Baina zenbait kasutan presoak agian isolamenduko moduluan egon ez arren bakarrik egoten dira, hau da, beste kiderik edo euskal preso politikorik gabe egoten dira, eta kasu hauetan bakartuak daudela esaten da. Hona hemen momentu honetan Espainiako eta Frantziako espetxeetan bakarturik dauden preso politikoen zerrenda:

**Euskal Herria**

Txus Martin (Zaballa)
Gotzone Lopez de Luzuriaga (Martutene)
Jose Angel Biguri (Martutene)

**Espainiar estatua**

Oscar Zelarain (Alcala Meco)
Sara Majarenas (León)
Ibai Peña (Soto del Real)

**Frantziar estatua**

Jean Marie Saint Pee (Mont de Marsan)
Marian Aramendi (Joux la Ville)
Julen Eizagirre (Joux la Ville)
Mattin Olzomendi (Uzerche)
Oier Gomez (Moulins)

## Senideekiko erasoak

Enara Rodrigez, Arkaitz Rodrigez euskal preso donostiarraren arreba da, eta irailaren 28an bere anaia Logroñoko espetxean bisitatzetik zetorrela egoera latz bat bizitzea egokitu zitzaion. Bisitatik bueltan zetorrela, Logroñotik Iruñera doan A-12 autobian, bere alboan zihoan Opel Astra markako auto gris batek zuen jarrera arraroaz ohartu zen. Jarraian, Enarak gertatutakoa azaltzen du lehen pertsonan, bere testigantzarekin:

### ENARA RODRIGEZEN TESTIGANTZA

*Irailaren 28an (...) Logroñotik Iruñera doan autobia berria hartu nuen, A-12 delakoa. Bertan 18:30ak inguru zirelarik, kotxe bat aldamenean jarri zitzaidan; ni eskuineko karrilean eta bera ezkerrekoan ez aurrera ez atzera. Aurreratzeko asmorik ez zuela konturatzerakoan nik abiadura handitu nuen, eta berak berdina egin zuen nire parean berriro ere jarriaz; alderantzizko operazioa egin nuen, abiadura moteldu eta berak ere berdin. Aurpegia biratu nuen orduan kotxeko bidaiariak ikusteko asmotan, 2 gizon ziren.*

*Arroniz izeneko irteeraren parean kotxeak niregana jo zuen errepidetik aterarazteko asmoz, nik orduan 2 aukera nituen edo kotxea kolpatu edo irteera hartu; inkontzienteki irteera hartu nuen, eta abiadura handiarekin nindoanez kotxeak derrapatu egin zuen, eta 3-4 buelta eman nituen. Orduan gertatutakoa sinetsi ezinik, berriro autobia hartzeko asmoz piztu nuen kotxearen motorra; hanka dardarka nuela ohartu nintzen eta errepidearen alboan gelditzea erabaki nuen, lasaitzeko.*

*Han nengoela, ni ohartu nintzenerako, 2 gizonak kotxearen inguruan neuzkan. Bata kotxearen aurrean nik aurrera egin ez nendin, eta bestea nire aldamenean leihatilan kolpeka. Garrasika hasi zen alboan nuen gizona, kotxetik irten nendin, "puta zorra bájate del coche ya" eta horrelakoak esanaz. Ni erabat beldurturik nengoen, eta kotxetik jaisteko inongo asmorik ez nuela esan nien. Orduan alboko gizonak plaka bat kristalean jarri eta nire izenez deitu ninduen. Uste dut plaka hori Polizia Nazionalarena zela, baina, ezin dut ehuneko ehunean ziurtatu.*

*Lasaitzeko esaten zidan, niretzako hobe izango zela kotxetik irtetea eta horrelakoak esanaz. Nik ezetz eta ezetz. Uniformatuak etor zitezen eskatu nien, beraiekin ez nuela ezer jakin nahi. Bidean zeudela esan zidaten, eta bitartean leihatila jaisteko eta kotxeko paperak emateko. Azkenean ez dakit zergatik, leihatila jaistea erabaki nuen; momentu horretaz baliatu zen orduan nire alboko polizia, eta kotxeko atea ireki zuen leihotik eskua azkar sartuaz.*

*Momentu horretatik hasi ziren mehatxuak, irainak, bortizkeria…iletik tiraka kotxetik atera ninduen batek eta lurrera bota. Bertan nengoela hankaz zapaltzen ninduen zutitu ez nendin. Nik etengabe zutitzeko ahaleginak egiten nituen garrasi egiten nien bitartean. Zergatik bota ninduten errepidetik galdetzen nien etengabe, zergatik bueltatu ziren niregana… beraien erantzuna " hemos vuelto para ver si te habias muerto y habia una zorra menos" izan zelarik. Etengabe emakumea nintzela baliatuz, umiliatzen aritu ziren, bortxatuko nindutelako mehatxuak. Momentu batean lurretik altxatzea lortu nuen eta polizia batek airean hartu ninduen, eta eskumuturrak atzean loturik bezala heldu ninduen. Atzean nuen poliziak eskumuturretatik heltzen ninduen bitartean, nik ihes egiteko ahaleginetan mugitzen ari nintzen etengabe; izugarrizko mina jasaten ari nintzelarik, gero ohartu nintzen ezkerreko eskumuturrean sekulako erredurak nituela.*

*Atzean nuen polizia orduan ipurdia ukitzen hasi zitzaidan eta ea gustatzen zitzaidan galdezka. Parean nuenak bularrak ukitu zizkidan eta hankartean ostiko bat ematea lortu nuen. Orduan lepotik hartu ninduen eta "te voy a violar y te voy a matar por lo que has echo" esan zidan. Berriro lurrera, eta berriro hanka bular gainean, altxa ez nendin. Orduan nire bizilekuaz, lantokiaz, ibiltzen naizen lekuez…hasi ziren hitz egiten, nik jakin nezan ezagutzen nindutela. Ez zidaten galderarik egiten, dena beraiek esaten zuten, eta nik hitz egiterakoan isiltzeko eta isiltzeko. Nik aurre egiten nien. "como no te calles y dejes de insultarnos esta noche tendremos algo que celebrar", "eres una zorra valiente, ya veremos despues de violarte si sigues igual" esan zidan batek. Ez nekien bortxatu, atxilotu…edo zer egin nahi zuten nirekin, azken finean nik kotxearekin istripua izan nezan bultzatu baitzuten.*

*Beraien artean etengabe hitz egiten zuten, nirekin zer egin adosteko; nik ez nekien nola irten egoera horretatik. Azkenean batek lurretik altxa eta lepotik helduaz honakoa esan zidan: " vamos a jugar a un juego, te damos 5 minutos de ventaja, métete en el coche y corre todo lo que puedas, si te volvemos a ver por la autobia no lo cuentas"; orduan askatu ninduen, eta ni korrika kotxean sartu eta ahal nuen azkarren autobia hartu eta etxerako norantza hartu nuen. Izugarrizko abiadaz joan nintzen 10 bat minututan, kontziente izan nintzen arte; orduan gasolindegi batean gelditzea erabaki nuen lasaitzeko, nirekiko pentsatu nuen ez zirela berearekin irtengo, ez nintzela hain azkar joango errepidetik, azkenean beraiek bilatzen zutena baitzen, nik istripua nire kabuz izatea eta beraiek inpunitate osoz ateratzea egoera horretatik; ni erahiltzea zela helburua pentsatu nuen, baina beraien "parte-hartzerik" gabe.*

## Presoekiko eraso fisikoak

**Kepa del Hoyo (Badajoz)**

Badajozeko espetxean aurkitzen den Kepa del Hoyo presoak funtzionario baten hainbat irain eta mehatxu jasan behar izan ditu. Funtzionario honek aspalditik erakutsi jarrera txarra euskal preso politikoekiko orokorrean, oso jarrera oldarkorra duelarik beraiekin. Baina, Kepa del Hoyoren kasuan, beste preso sozial batzuen bidez, mehatxatzen saiatu izan da, eta Kepak egunero jasotzen duen egunkarian irainak ere idatzi izan dizkio.

Honen aurrean, Del Hoyok Zaintza epaile zentralari kexa bat sartu dio, eta gainera, Espetxeko Zuzendaritzari ere egoeraren berri eman eta modulu aldaketa eskatu dio. Baina, bere eskaeren aurrean ezezko borobila jaso du.

Gure senide eta lagunek horrelako egoerak bizi behar izatea, erabat bidegabekoa iruditzen zaigu. Gure senide eta lagunek bizi baldintza gogorrak jasan behar izaten dituzte espetxeetan, baina horrez gain, funtzionarioen aldetik jasan behar izaten dituzten irainak, probokazioak, mehatxuak eta erasoak ugariak izaten dira.

Kepak eta beste senide eta lagun askok jarrera oldarkorrak eta bortitzak jasan behar izaten dituzte, tentsio une handiak bizi dituzte. Zenbait kasutan aipatu mehatxu hauek eraso izatera pasatzen dira. Zifrak beldurgarriak dira, izan ere, 2012. urte honetan jada 12 eraso eman dira espetxeetan.

**Hodei Ijurko (Soto del Real)**

Hodei Ijurko presoak 2008. urtean zortzi funtzionarioren jipoi bat jasan zuen Soto del Real espetxean. Jipoiaren ondorioz, astebete pasa behar izan zuen erizaindegian. Jarraian, hamabost egunez desagertua egon zen, bere senideek inongo berririk ez zutelarik. Azkenean, preso sozial baten senideei esker jakin zuten Curtiseko espetxera leku aldatzena ari zirela. Jipoia jaso ondorengo bi urteetan isolamenduan egon zen. Berak jaso zuen jipoiagatik salaketa jarri zuen; era berean, bera jipoitu zuten funtzionarioek ere salaketa bat jarri zuten Hodeien aurka. Bere salaketa atzera bota zuten, baina jipoitu zuten funtzionarioena aurrera joan da, eta epaiketa hori urriaren 22an, astelehenean gauzatuko da. Bi urteko espetxe zigorra eskatzen diote.



# BESTELAKO GERTAERAK

## Espainiar estatua

**Cordoba**
Espetxeari elkarrekin komunikatzea eskatu zioten, eta hasiera batean baiezkoa emango zietela ematen bazuen ere, ezezkoa jaso dute; gainera, Instituciones Penitenciarias-en eskatzeko ere esan diete.

**Ocaña I**
Irailean espetxe zuzendaritzarekin mantendutako bilkuran denak modulu berean elkartzeko eskaera berretsi zuten, baina, Madrileko agindurik egon ezean aldaketarik ez dela egongo jakinarazi zieten.

**Sevilla II**
Dinamika bat jarri dute martxan, astero zuzendaritzari gutuna bidaltzea eta bigarren ostiraletan itxialdia burutzea, hainbat eskaera egiteko. Eskaerak honakoak dira: sendagile artatzea bermatzea; astero sendagilearengana joan ahal izateko eskubidea; ospitalera irteerak eta espezialistak izateko eskubidea bermatzea; kirol aktibitateetan eta soziokulturaletan parte hartzeko eskubidea; preso politiko guztiak modulu eta patio berdinean biltzea.

Sendagileekin dagoen arazoa aspalditik dator. Espetxeak ez du asteroko mediku artatzea bermatzen eta ondorioz itxaron zerrendak luzatzen dira. Espetxetik gaia konpondua dagoela esan arren, ez da horrela, eta gaia konkretuki lantzeko planteamendua lantzen ari dira.

Funtzionario batzuekin arazoak errepikatzen ari dira. Miaketak eta probokazioak maiz errepikatzen dira. Irailaren 1ean, esate baterako, miaketa gogorra jasan behar izan zuten Manuel Gonzalezek eta Arkaitz Bellonek. Miaketa hau dela eta, salaketa bat burutu dute epaitegietan eta itxialdi bat ere egin zuten.

**Puerto III**
Beste urtetan ez bezala, ikasketetarako liburuak ordainarazi dizkiete Maite Diaz de Herediari.

**Soto del Real**
Iñigo Zapirain dilijentziengatik bertan egon zenean, galeriaz aldatu behar izan zuten, preso sozial batek hainbat aldiz mehatxatu zuelako.

**Teixeiro**
Andoni Murga presoa errehabilitazioa egiten ari da, eskua espetxeko ate batekin harrapatu ondoren. Atzerapen handiarekin hasi zuen errehabilitazioa, eskuko euskarria berandu kendu ziotelako.

### Valencia III

Iñaki Urdiain presoaren emazteak eta semeak bisita bat eskatu zuten urriaren 21, iganderako, 17:00etan. Baina, espetxera joan zirenean, funtzionarioek ez zieten bisitan sartzen utzi, beraien zerrendan bisita urriaren 20an, 10:00etan zutela jartzen zuelako. Funtzionarioei egoera azaltzen saiatu ziren arren, eta telefono deiak grabatuta geratzen direnez begiratzea zegoen arren, ezin izan zuten bisitarik burutu. Gerora, funtzionarioek barkamena eskatu zioten presoari, baina, horrek ez du balio izan baldintza txarretan egindako alferrikako bidaia aurrezteko, horrek duen gastua ekiditeko, eta momentuan igarotako une txarra saihesteko. Gainera, presoak ere larritasun handiarekin bizi zuen egoera, zer gertatu zen ez zuelako jakin etxera deitu ahal izan zuen arte.

## Frantziar estatua

### Chalons en Champagne

300 gizon eta 30 emakumez osatuta dago espetxea. Ondorioz emakumeen eskaerak eta beharrak erabat bazterturi ditu zuzendaritzak. Horregatik eskaera konkretu batzuk egin dizkiete: bisita bikoitzak izatea (astean 3 bisita daude, 45 minutukoak eta bikoitz bat hilean), bakoitza ziega batean egotea, kiroldegira egun batez joan beharrean bigarren egun batez ere joan ahal izatea, plaka elektrikoa ziegan eduki ahal izatea, barazki gehiago jartzea kantinan eta patio orduak luzatzea. Ez diete eskaera bat bera ere onartu.

### Lannemezan

Ibon Fernandez Iradik bere gaixotasunaren rekaida bat izan du. Urriaren 5ean izan zen eta ospitalera joan--etorria egin zuen ostegunean, hilaren 11n. Kanpo kontsulta bat eduki zuen eta tratamendua espetxean bertan ematen ari zaizkie. Orain, erresonantzia baten zain daude, aurrekoarekin konparatzeko.

### Liancourt

Gauero hiru zenbaketa berezi izaten dituzte, eta orain goizekoa besterik ez izatea lortu dute.

### Muret Seysses

Urriaren hasieran Oihana Garmendia 5 egun ziegan pasatzera zigortu zuten komisio diziplinarioan. Baina, tokirik ez zegoenez, ez zuten une horretan eraman. Hau salatzeko Oihana Garmendiak eta Itziar Morenok planto bat egin zuten, eta une horretan funtzionarioek airean hartu zituzten, eta ziegetara eraman zituzten.



# 7. ETXERATEN EKIMENAK

## EAE-ko lehendakarigaiekin bilkurak

**Etxerat elkarteak lehendakarigaiekin egin behar duen bilkuren erronda egin du. Bilkura hauen helburua, lehendakarigaiek guk geuk eta gure senide eta lagunek bizi duten egoeraren berri emateaz gain, eskaera zuzenak egiteko baliatu genuen. Eta eskaerak honako hauek izan ziren:**

• Espetxe politika honek eragiten digun eta eragiten duen sufrimendua aitortzea.

• Salbuespeneko espetxe politika honekin eta sakabanaketarekin amaitzea exijitzea.

• Politika hau desaktibatzen ez den bitartean, sortzen dituen ondorioak arintzen laguntzea eta gainera, konponbide bat ematen saiatzea.

• Publikoki Enara Rodrigezek jasan berri duen erasoaren salaketa egitea, eta gertatu dena argitzea exijitzea. Era berean, erantzukizunak aurkitzea ere eskatzen dugu.

**Eskaera hauek zuzenean egin ahal izan dizkie Etxerat elkarteko Nerea Izagirre eta Jon Fano kideek, Equo eta EHBilduko lehendakarigaiei beraiekin egindako egindako bilkuretan:**

• Equo alderdiko, Aitor Urresti, lehendakarigaiarekin bildu ziren urriaren 12an, eta bertan eskaera zuzen hauek egin genizkion. Etxerat elkarteak modu positiboan baloratu zuen bilkura hau. Izan ere, Equo alderdiak, eta bereziki Aitor Urrestik, adierazi zigun gurekin harremanetan egoteko interesa dutela.

• EHBildu koalizioko lehendakarigaia den Laura Mintegirekin ere urriaren 12an bildu ginen. Etxeratek bilkura honen balorazio positiboa egin zuen, izan ere, EHBildu koalizioko lehendakarigaia den Laura Mintegik adierazi zigun bat egiten dutela gure eskaerekin, eta euren diskurtsoan barneratzen dituztela. Eskaera hauek, euren eskaera propio egiten dituztela gaineratu ziguten.



# 8. ASKATASUNAK, ESPETXERATZEAK ETA LEKUALDATZEAK

## Askatasunak

**Itziar Martinez (Galdakao)**, urriaren 11n. 21 urte espetxean igaro ostean.
**Oskar Abad (Basauri)**, urriaren 11n. 21 urte espetxean igaro ostean.
**Araitz Zubimendi (Hernani)**, urriaren 20an. Zigorra beteta.
**Urtzi Azpiroz (Andoain)**, urriaren 23an.
**Luis Migel Ipiña (Mexiko).**
**Mikel Almandoz (Burlata)**, urriaren 25ean. Zigorra beteta.

## Espetxeratzeak

**Anabel Prieto (Bilbo),** urriaren 8an. Aranjuezen epetxeratu zuten betetzeko zuen zigorra amaitzeko. 10 egunetako bere semearekin sartu zen espetxera.
**Jon Iñaki Perez Aranburu (Donostia)**, urriaren 19an. Frantziak bere estradizioa eskatu du. Soto del Realeko espetxean espetxeratu dute.
**Saúl Kurto (Bilbo)**, urriaren 22an atxilotua izan zen.

## Lekualdatzeak

**DESTINU ALDAKETAK**

***Espainiar estatua***

**Gaizka Astorkizaga (Bilbo)**, Basauri-tik Topas-era.
**Jesus Mari Etxebarria Garaikoetxea (Orereta)**, Cordoba-tik Puerto III-ra.
**Aitziber Coello (Durango)**, Soto del Real-etik Foncalent-era.

***Frantziar estatua***

**Juan Carlos Estevez (Orereta)**, Marseilles-etik Muret-era.
**Iñaki Arietaleaniz (Bergara)**, Meaux-etik La Sante-ra.
**Oier Gomez (Gasteiz)**, Moulins-Yzeure-tik Meaux-era.
**Marina Bernadó (Barcelona),** Fresnes-etik Reau Sud Francilien-era.
**Ainhoa Garcia Montero (Donostia)**, Fresnes-etik Reau Sud Francilien-era.
**Mertxe Chivite (Iruñea)**, Fleury-tik Reau Sud Francilien-era.
**Eneko Bilbao (Bilbo)**, Reau Sud Francilien-etik Muret Seysses-era.

**DILIJENTZIAK**

***Espainiar estatua***

**Asier Aginako (Durango)**, Aranjuez-etik Soto del Real-era.
**Aitor Fresnedo (Portugalete)**, Albocasser-etik, Jaen II-ra.
**Xabier Makazaga (Segura)**, A Lama-tik Valdemoro-ra.
**Jon Igor Solana (Bilbo)**, Navalcarnero-tik Cordoba-ra.
**Iñigo Zapirain (Bilbo)**, Soto del Real-etik Valdemoro-ra.
**Andoni Otegi (Leaburu)**, Caceres-etik Valdemoro-ra.
**Gorka Garcia (Algorta)**, Valdemoro-tik Algeciras-era.

